# SANTIAGO APOSTOLUAREN EGUNA

## Hasierako oharra

Anai-arrebok: ondo etorriak Santiago apostoluaren eguneko eukaristiaren ospakizunera. Munduko herri askok eta askok dau Santiago fededun eredugarritzat eta debozino handia deutse Jesukristoren jarraitzaileen artean eredu izan danari.

Santiago apostoluaren bidea ez zan turistikoa izan; erromesbidea izan zan, hau da, Jesus bere Maisu eta Jaunak edan eban kopa beretik edan nahi izan eban.

Gomuta horren poztasunaz, eukaristiari hasierea emongo deutsagu. Zutunik, abestu egingo dogu.

## Sarrerako abestia

## Abadearen agurra

**Santiago apostoluak hitzez eta martiritzaz iragarri eban Jesukristo gure Jauna, zuekin.**

## Damu otoitza

**Isiltasuna egin eta eukaristia ospatzeko prestatuko gara.**

— Aitagana garoazan bidea zarana: Erruki, Jauna.

— Herrietan argi egiten dauan egia zarana: Kristo, erruki.

— Mundua barritzen dauan bizia zarana: Erruki, Jauna.

## Oharra irakurgaiei

Lehenengo irakurgaian, Santiagoren martiritza aurkeztuko jaku.

Kristoren ikaslea, benetako lekukoa da eta Jaungoikoaren esana egin behar dau gizonenaren gainetik.

Paulo Jesus Jaunaren ikasleak bigarren irakurgaian zera dinosku: berak bere gorputzean sufritzen dituala nekaldiaren seinaleak.

Apostoluak uste osoa dau bere Semea hilen artetik berbiztu eban Jaungoikoagan eta egunen batean bera be biztuko dala itxaroten dau.

## Jaungoikoaren herriaren otoitza

**Gure eta erromes guztien babesletzat autortzen dogun Santiago bitarteko dogula, eskatu daigun gizadiaren beharrizan guztien alde.**

1.- Eleizaren alde; ebanjelizazinoan dihardUen guztien alde, Jaungoikoaren grazia lagun, euren lekukotasunak fedea ausardiaz transmititzera eroan gaizan. Eskatu deiogun Jaunari.

2.- Guraso eta hezitzaileen alde, ume eta gazteak giza eta kristinau balioetan hezi daiezan eta zailtasunak gainditzeko adorea izan daien. Eskatu deiogun Jaunari.

3.- Agintari eta legegileen alde, euren erabagi guztiak guztion ona lortzeko izan daitezala, gizon eta emakume guztien, batez be, baztertu eta behartsuen eskubideak errespetatuz. Eskatu deiogun Jaunari.

4.- Gu guztion alde, gure kristinau alkarteen, familien, jaietan dagozan herrien eta Santiago-bidea egiten ari diran guztien alde, apaltasunez, abegiz eta alkar errespetatuz bizi gaitezan. Eskatu deiogun Jaunari.

**Aita, entzun Santiago apostoluaren egunean egiten deutsugun otoitz hau eta isuri gugana zure ontasunaren doe guztiak. Jesukristo gure Jaunaren bitartez.**

## Abadearen agurra (bedeinkapenaren ostean)

**Orain, gure egintzen bitartez, argi agertu behar dau Jesukristoren heriotza eta berbizkundearen lekukotasunak. Bildur guztiak gainditu behar doguz. Santiago egun ona izan!**

**Zoaze Jaunaren bakean!**

**Egun honetarako gogoeta**

Aparteko egunak, egun esanguratsuak, izaten dira gizon-emakume bakotxaren bizitzan. Kristinau Alkartean bere, berezitasuna adierazoten daben arrazoiak izaten dira. Holakoa dogu gaurko egun hau. Santiagoren jaia da. Jesusen hurkoenetarikoa izan zan.

Maitekiro zaindu eban Jesusek bere taldea: Erreinuaren egitasmoa bereganatuko eban alkartea egin gura izan eban eurakaz. Hau da: gizon hareek Berak zituan asmo berberak izatea gura izan eban, Jainkoaren aldetik Berak eskaintzen eutsen behin betiko proposamenagaz maitemindu eitezala. Makalak ziranez, bere Espirituaren doea eta indarra eskaintzen deutsez.

Santiago izan zan Jesusi jarraitzea lehenengo izenpetuko ebana, odola isuriaz izenpetu be; azkeneraino izan zan lekuko zintzoa. Gero egin eben taldeko beste guztiek; historian zehar, asko izan dira Jesusen bide berbera jarraitu dabenak, euren burua guztiz eskaintzeraino.

Egun polita da, bada, gaurkoa, gure fedearen eta Jesusi jarraitzearen sakontasunari eta osotasunari buruz geure buruari itauntzeko. Barriro be, deia dogu. “Zirikatzen“ eta merezidu dabenen arteko deia. Adoretuko ete gara, bada?